**MARIALUZ ALBUJA BAYAS**

Quito - Ecuador, 1972. Estudió Artes Liberales en la Universidad San Francisco de Quito y obtuvo su maestría en Estudios de la Cultura, con mención en Literatura Hispanoamericana, en la Universidad Andina Simón Bolívar. Ha trabajado como docente en las áreas de Literatura Hispanoamericana, Inglés y Lengua Española en diferentes colegios y universidades del país y del extranjero. Sus textos han sido publicados en diversas revistas literarias nacionales e internacionales, así como en antologías en el Ecuador, Argentina, Venezuela, Perú, México y España. Es parte de la muestra permanente, Prometeo Digital, de la Academia Iberoamericana de Poesía. Sus poemarios publicados son: *Las naranjas y el mar* (1997), *Llevo de la luna un rayo* (1999), *Paisaje de sal* (2004) y *La pendiente imposible* (2008). Este último fue premiado por el Ministerio de Cultura en 2008. La autora también participó en el libro colectivo *La voz habitada*. Trabaja como traductora y editora, dentro y fuera del Ecuador.

Para contactarse con Marialuz Albuja: mayayu5@gmail.com

**MARIALUZ ALBUJA BAYAS Mikelazuloren begietan.**

Mikelazuloko kideok 1996. urtean ezagutu genuen Marialuz Albuja Bayas Ekuadorreko idazlea. Garai hartan ez zuen oraindik libururik argitaratu. Poemak zirriborratzen zituen gutxien espero zenuen lekuan, eta beti zihoan gitarrarekin alboan, une baten oihartzuna luzatzeko prest. Ordutik sormenerako gertu dagoen urruntasunetik jarraitu dugu elkarlanean eta elkar harremanean, begien aurrean duzun euskarazko itzulpen honetara iritsi arte.

Europa gazterik zeharkatu ostean iritsi zitzaion Marialuzi bere Ekuadorrera itzultzeko tenorea eta han, azkenean, idazle egin zen. Europako esperientziekin atondu zuen lehen poesia bilduma, *Las naranjas y el mar* (1997), eta haren ostean bere idazle ahotsa zedarritzen lagundu zion bigarrena ere: *Llevo de la luna un rayo* (1999). Marialuz hirugarren liburuaren zirriborroari azken ukituak ematen ziharduen Mikelazuloko kideok 2003an 'Ñami mishakunchic' proiektua egin genuenean Ekuadorren. Marialuzek lotu eta antolatu zituen, hain zuzen ere, Mikelazulook Café Libro eta Trilce aretoetan eskainitako emanaldiak, Quitoko musikari, zinemagile eta idazleekin elkarlanean. Esperientzia haren isla jaso genuen paperean 'Ñami Mishakunchic'(2005) izeneko liburuan, Marialuzi egindako elkarrizketa bat barne.

*Paisaje de sal* (2004) hirugarren liburua posta bidez jaso genuen hortaz, eta haren bidetik etorri zen ostera *La pendiente imposibe* (2008) ere. Azken honen orrietatik ateratako testuak dira euskaraz paratu nahi izan ditugunak batBada proiektuaren eskutik, 2010ean gauden honetan, *Ezinezko pendiza* tituluarekin. Sormenak pertsonen artean ez ezik, kultura eta hizkuntzen artean ere zubiak eraikitzen dituela sinistuta.

**El frío me araña los huesos.**
Padre, me has desterrado.
Voy en busca de un lugar para quedarme
y sólo me encuentro con las colinas donde se eleva tu casa en el horizonte.

No sabes que ya no soy yo,
que hace tiempo me dejé esperando un tren que jamás llegaría,
que una tarde me abandoné en un mercado repleto de gente
mientras mi boca se perdía en las delicias de la fruta.

Ahora tú me echas.
Pero no sabes que ya no soy yo
que hace tiempo me abalancé bajo las ruedas de un coche
que una mañana desperté en otra tierra
y sólo volvió mi vacío.

A veces me espanta la noción de mi cuerpo
llamándome desde ese lugar al que no tengo acceso.
Sin embargo pueden ser bellos el destierro y el abandono
como lo son las gotas de sangre en el cristal destrozado por un puño.
Como lo es mi dolor brillando en la oscuridad.
Él será la tierra ambulante que habrá de sacarme a flote
cuando todo lo demás comience a hundirse.

Me has desterrado, padre.
Tal vez sea justo.
Pero hace tiempo que ya no me importa saberlo.

**Hotza ari zait harramazka hezurretan.**
Aita, erbestera behartu nauzu.
Bilaka nabil bizileku beharrez
eta bakarrik aurkitzen dut muinoetan altxatzen den zure etxea zeruertzean.

Ez dakizu ni jada ez naizela ni,
aspaldi utzi nuen nintzena sekula helduko ez zen trenaren zain,
arratsalde batez etsi nuen azoka jendez betean
ahoa galtzen zitzaidala fruten gozatzera.

Orain, alde egiteko diozu.
Baina ez dakizu ni jada ez naizela ni,
aspaldi bota nuen nire burua auto baten gurpil azpira
goiz batez beste nonbait esnatu nintzen
eta soilik nire ausentzia itzuli zen.

Batzuetan izutzen naiz aditzean nire gorputza
deika leku iristezin horretatik.
Hala ere, ederrak izan daitezke erbestea nahiz abandonua
odol zipriztinak bezala kristala apurtzean ukabilka.
Nire oinazearen dirdira bezala iluntasunean.
Hura izango da nire lur sustraigabea, gainazalera ekarri beharko nauena
gainerako guztia hondoratzen hastean.

Erbestera behartu nauzu, aita.
Agian hala behar zuen.
Baina aspaldian ez nau kezkatzen jakiteak.

**Bastaría con que el correo**
-en el que envío cartas y fotografías a mi madre-
se extraviara.
Bastaría con que se cayera el avión que me debe llevar dentro de poco a mi ciudad
para que junto conmigo desaparezcan los diarios,
los poemas, las fotografías, sus negativos
y toda evidencia de mi existencia terrena.
Permanecería en la memoria de quienes me quieren
mientras no les diera un infarto cerebral, como le ocurrió a mi abuelo,
que olvidó el sabor de la naranjilla, su propio nombre y hasta el rostro de mi abuela.

Sin embargo aquí estoy,
atesorando las voces de mis hermanos,
jugando con ellos en un parque donde nunca estuvimos de niños,
invocando a mis padres,
dibujando mi sombra en los fragmentos que me quedan de su errancia.

Y no importa que después ya nadie sepa de nosotros,
pues el absoluto es hoy,
y en su fuego de relámpago
brillamos.

**Aski litzateke postak**
-nire gutun eta argazkiak amari daramazkionak-
bidea galtzea.
Aski lurra jotzea nire hirira eraman behar nauen hegazkinak
nirekin batera desager daitezen egunkariak,
poemak, argazkiak, argazkien negatiboak
eta lur gainean izan naizenaren aztarna guztiak.
Berdin oroituko nindukete maite nautenek
garuneko infarturik izan ezean, gure aitonak bezala,
naranjillaren zaporea ahaztu baitzuen, bere izena are amonaren aurpegiera ere.

Dena dela, hemen ari naiz,
nigan bilduz neba-ahizpen ahotsak,
haiekin jolasean umetan ezagutu ez genuen parke batean,
otoi eginez gurasoei,
geriza ematen nire itzal alderraiari geratzen zaizkion zatiei.

Berdin dio gero inork ezer ez badaki gutaz,
gaur-gaurkoak axola du,
eta tximistargi horren sutan
dirdira gara.

**El deseo del regreso me roza**
confabula con el tiempo y sus secretos.
Su distancia me trae preguntas
que hace tanto se esconden
detrás del silencio.

**Itzuli nahiak ikutzen nau**
sasian dabil denborarekin eta bere sekretuekin.
Urruntzean ekartzen dizkit galderak
luzaz egon direnak ezkutuan
isiltasunaren atzean.

Quisiera saber en qué instante
mi hermano primero abandonó la sonrisa infantil
para cubrirse de latigazos el rostro
cuándo mi madre soltó de su pelo las últimas flores
para probar, ya sin temor, de la amargura
cuándo mi hermana ocultó en su mirada el vacío
y acaso en la música el miedo a perderse,
en qué noche mi padre miró las estrellas
y vio que el futuro se había esfumado en el tiempo
qué día mi hermano menor descubrió que era tarde
para volver al agua pura del antes
y se deshizo de la memoria
como quien libera sus manos del nudo que las aprisiona.

Padre, soñador de caminos,
te escucho y me encuentro con un conocido de antaño,
con el niño de la foto en traje de Primera Comunión,
lazo en el hombro, mirada de ambigua tristeza que hasta ahora me persigue.
Entonces eres el padre de mis hermanos.
Padre de los animales que habitan la tierra.
Padre de los abandonados.
Pero no mi padre.
Me pregunto si recuerdas las mañanas en casa de tu abuelo
el café con leche recién ordeñada,
los camiones de naranja que tu infancia dejó escapar.
Yo lo recuerdo todo sin haberlo visto.
No te hablo de estas cosas.
Juego a ser hija y me equivoco.

Jakin nahi nuke zein unetan
neba nagusiak utzi zion barre txikiak egiteari
orbainez zigortzeko aurpegia
noiz amak bildu zituen iletik azkeneko loreak
aurre egiteko, beldurrik gabe, oinazeari
noiz ahizpak gorde zuen begiradan ezereza
eta akaso musikarekin ahaztu galtzeari beldurra,
zein gauetan gure aitak so egin zien izarrei
eta jakin zuen geroa joana zela denborarekin
zein egunetan neba txikiak iritzi zion berandu
itzultzeko atzoko ur garbira
eta utzi zion oroitzeari
preso zauzkan korapilotik eskuak libratzean bezala.

Aita, bideak amesten dituzuna,
adi naukazu eta aspaldiko ezagun bat agertzen zait,
argazkiko umea lehen jaunartzerako jantzita,
lazoa sorbaldan, oraino segika dudan bi aurpegiko tristezia begietan.
Une horretan zara nire neba-ahizpen aita.
Lur gainean diren animalien aita.
Baztertuen aita.
Baina ez nire aita.
Ez dakit oroitzen dituzun zure aitonaren etxeko goizak,
kafea esne jetzi berriarekin,
umetan ihes egiten utzitako laranja-kamioiak.
Den-dena oroitzen dut nik ikusi gabe.
Ez natzaizu kontu horiez mintzatzen ari.
Alabarena egiten saiatzen naiz eta asmatu ez.

Juego a nacer otra vez
pero me pierdo en los cables que llevan tu voz a mi oído.

Madre, no sé cómo hacer para hallarte.
Tal vez escarbando en mi pecho
que acaso sea sólo una sombra de ti.
Tal vez en la tierra que dejo,
tal vez en las aguas que traen de vuelta mis miedos
cuando siento que nunca podré regresar.

Hermanos, no sé si algún día les dije
que sigo buscando el silencio
que sólo su abrazo podría salvarme
que no soy la misma que los hacía reír en la cocina
que el tiempo se me incrustó en el cuerpo y me separó de mis veinte años
que ya no recuerdo el roce de la hierba en la espalda desnuda.
Pero sí la hierba.
Que me duelen ustedes y su inagotable fluir
en estas madrugadas que de pronto los arrastran a mi lado
para juntos habitar los cuatro extremos de la Cruz del Sur
los puntos cardinales que adornan el techo de la catedral
los reflejos proyectados en la tierra cada vez que hay equinoccio.

Compartimos secretos enterrados como piedras en un hoyo sin fin
secretos de túnel entre una montaña y el mar
silencios de mirlo sobrevolando los arbustos que rodean nuestra casa
y ese oculto paraíso que todavía nos espera en algún sitio.
Con las manos escarbamos la montaña que lo cubre todo.

Berriz jaiotzen saiatzen naiz
baina galdu egiten naiz zure ahotsa nire belarrietara daramaten harietan.

Ama, ez dakit nola egin zu aurkitzeko.
Beharbada aztarrika irekita nire bularra
zinenaren printza besterik ez bada ere.
Beharbada utzi dudan lurra,
beharbada nire mamuak berpizten dituzten urak
sumatzen dudanean ezingo naizela sekula itzuli.

Neba-ahizpak, ez dakit noizbait esan dizuedan
isiltasunaren bila nabilela orain ere
soilik zuen besarkadak salba nazakeela
ez naizela sukaldean barre eginarazten zizuen bera
denbora sartu zitzaidala gorputzean eta zahartu zizkidala neuzkan hogei urteak
ez dudala oroitzen belarraren laztana bizkar biluzian.
Baina belarra bai.
Zuen minez nagoela eta min ditudala zuen urrats agorrezinak
gauerdiak oharkabean arrastaka ekartzen zaituztetenean nire ondora
elkarrekin bizi gaitezen Hegoaldeko Gurutzearen lau ertzetan
katedralaren sabaia apaintzen duten lau erpinetan
lurrazalera datozen izpitan ekinozioa den aldiro.

Gure arteko sekretu asko ehortzi dugu harriak bailiran zulo azkengabean
sekretuak mendiaren eta itsasoaren arteko tunelak bailiran
xoxo isilak bailiran hegaka gure etxe inguruko zuhaixkatan
eta oraindik ere hor nonbait zain dugun paradisu gordean.
Eskuez ari gara aztarrika edozer estaltzen duen mendian.

Con los ojos nos llamamos cómplices
enredadera remota sobre el muro de los años
ejército de alas contra la amenaza del huracán.
Juegos inconclusos.
Peleas inconclusas.
Universo de palabras sin principio.
¿Hermanos desde cuándo?
Siempre.
Entonces.
Mañana.
Los veo en el espejo sin saber cómo han entrado
rasgos ajenos en mi piel
réplicas mansas.
¿Qué significa ser hermanos?
¿Qué, ser hijos?
¿Qué, habernos extraviado en los laberintos de la infancia compartida
para hallar en nuestra risa las secuelas del dolor?

Digo Padre,
Madre,
Hermanos.
Venas del agua que me sacia
y de la sangre que me recorre sin condiciones ni preguntas.
Horda
racimo
mano inquebrantable.
Costas lejanas
islas
archipiélago.

Begiez aitortzen diogu elkarri konplize garela
huntz urruna urteen harresian
hegodun gudarostea haize-erauntsi mehatxuaren aurrean.
Joko bukatu gabeak.
Borroka bukatu gabeak.
Hitzen unibertso hasierarik gabea.
Neba-ahizpa gara noiztik?
Beti.
Orduan.
Bihar.
Ikusten zaituztet ispiluan jakin gabe nola sartu zareten
aurpegiera arrotzak nire larruan
erreplika otzanak.
Zer esan nahi du neba-ahizpa izateak?
Zer, seme-alaba izateak?
Zer, galdu izanak haurtzaroko elkarbizitzaren labirintoetan
barre egitean aurkitu ditzagun oinazearen aztarnak?

Aita diot,
Ama,
Neba-ahizpak.
Asetzen nauen uraren zainak
eta galderarik nahiz baldintzarik gabe dabilkidan odolarenak.
Piztiak
sorta
esku menderaezina.
Itsasertz urrunak
irlak
uhartedia.

Banquete ya imposible
ágape roto
cántaro que salta en pedazos cuando me acerco a beber
vidrio disuelto en la secreta polvareda de la aurora
espuma desmembrada.
¿Qué significa habernos conocido?
¿Qué, haber roto cuanto existe
para alcanzar esta frontera que no los halla ni los identifica?

No sé si algún día les dije
que sólo sus voces podrían salvarme,
que sólo en sus brazos podría sentir que aún existo.

Pero el tiempo se interpone
más
aún
más
todavía
en el camino hacia un regreso desprendido de sí mismo.
Un regreso que se arrima
un deseo que me roza
que se enreda, sin saberlo,
con el viento
y sus secretos.

El regreso
que hasta siempre
ha de esperarnos.

Oturuntza jadanik ezinezkoa
otordu lehertua
puskatutako marmita edatera noanean
beira urtua egunsentiko hauts-laino gordean
apar deuseztua.
Zer esan nahi du elkar ezagutu izanak?
Zer, den edozer apurtu izanak
heltzeko non eta nor zareten ez dakien mugara?

Ez dakit noizbait esan dizuedan
soilik zuen ahotsek salba nazaketela,
soilik zuen besotan jakin nezakeela oraindik bizirik nagoen.

Baina denbora traban dago
gehiago
are
gehiago
oraindik
atzera egiteari utzi dion itzulerako bidean.
Ondoan dabilkidan itzulia
ikutzen nauen nahia
korapilatu egiten dena, ustekabean,
haizearekin
eta bere sekretuekin.

Itzulera
sekula eta beti
gure zain izango dena.

**No volveré a ser arrastrada por el torrente de un río.**
Levantaré una muralla y miraré su belleza de piedra.
De nada me serviría arrojarle un ladrillo a mi padre.
Ha de seguirme hasta la cueva donde levanto mi tienda.
He de saber dónde se esconde
he de encontrar el lugar que cobija sus miedos
desde que intenté clavarle un cuchillo por la espalda
desde que él despedazó mi secreta guarida.

Cada piedra derrumbada por sus manos
será la piedra que ahora le falta.
Y la que a mí me falta.
Soy hija suya.
Mi mano ha tocado las tumbas de sus antepasados.
Él conoce ya los nombres de mi descendencia.
De nada serviría arrojarle un ladrillo en la frente.
De nada, que él me destruyera.

**Ez nau berriro eramango ibaiaren korronteak.**
Murru bat egingo dut eta bere harrizko edertasuna miretsiko.
Ezer ez nuke lortuko adreilurik botaz gero aitari.
Nire atzetik etorri beharko du denda dudan leizeraino.
Ezagutu beharra dut bere ezkutazuloa
jakin non bizi zaizkion beldurrak
saiatu nintzenetik labana sartzen bizkarrean
berak desegin zuenetik nire kabi kuttuna.

Bere eskuek abaildutako harri oro
izango da orain behar duen harria.
Nik behar dudan bera.
Bere alaba naiz.
Nire eskuez ikutu ditut bere arbasoen hilobiak.
Berak dagoeneko badaki zer izen duten nire ondorengoek.
Ezer ez litzateke aldatuko adreiluz jota bere kopeta.
Ezer ez, berak ni suntsituta.

**Esta es la casa del padre**
donde partimos el pan después de su regreso.
La casa del padre en la cima de una colina que el viento se come poco a poco.
La casa del padre bajo un cielo sin nubes.

El padre que abandonó
y que hoy alarga sus brazos por encima de los montes que nos separan.
El padre que ahora vuelve renovado
como quien regresa de otra tierra
para convertirse en dios.
El padre que no parece padre
porque las aguas de cientos de ríos han acariciado sus manos
y han sido degustadas por su boca.
Aguas doradas
dirigidas por el sol en su travesía hacia la muerte.
Aguas que de tan claras se olvidaron de su condición
para ser cielo o espejismo de la arena.

**Hauxe da aitaren etxea**
bertan partitu ohi dugu ogia bera itzuli eta gero.
Aitaren etxea haizeak ezarian jandako muino tontorrean.
Aitaren etxea hodeirik gabeko zerupean.

Baztertu gintuen aita
eta gaur besoak luzatzen dituena banatzen gaituzten mendien gainetik.
Aldatuta orain datorren aita
bera bailitzan lur arrotz batetik itzuli dena
jainko izateko.
Aita dela ez dirudien aita
ehunka ibaietako uren laztana ezagutu duelako
eta haien gozamena dastatu.
Urrezko urak
eguzkia daramatenak lemazain herio-bidaian.
Gardenaren gardenaz zerizana ere ahaztu duten urak
zeru izateko edota liluramendu hareatzan.

Esta es la casa que no tuvimos.
La casa de los sueños tardíos
donde los nevados acarician la garganta que despierta
y las estrellas se reflejan en los ojos del que duerme.
La casa donde no hemos cosechado porque no sembramos
y donde
pese a ello
creemos pertenecer.

Esta es la casa del padre.
Aquí habremos de llamarnos hijos suyos.
Aquí habremos de volver cuando podamos mirarla desde la distancia
y sobresalga en el perfil de la montaña
como el único refugio en esta tierra erosionada.

Seremos caminantes de eternas Comalas.
Llamaremos en la madrugada con la clave que nos heredó.
Responderemos al sonido de su lengua.

Esta es la casa del padre
donde partimos el pan después de su regreso.
Donde lo saboreamos por primera vez
y por primera vez
queremos que así sea.

Hauxe da izan ez genuen etxea.
Beranduko ametsen etxea
bertan betiko elurrek eztarri esnatu berria laztantzen dute
eta izarrak lo dagoenaren begietan ispilatzen dira.
Erein ez genuelako uztarik eman ez digun etxea
eta
hala ere
hangoak garelakoan gaude.

Hauxe da aitaren etxea.
Bertan aitortu beharko dugu bere seme-alaba garela.
Bertara egin beharko dugu urrunetik begiratzeko gai garenean
eta mendiaren ingeradatik aterea ikustean
lur higatu honetako gordeleku bakarra bailitzan.

Alderrai ibiliko gara Comala eternaletan.
Gauez deituko dugu bere egin gaituen klabea erabilita.
Kasu egingo diogu bere mintzoaren hotsari.

Hauxe da aitaren etxea
bertan partitu ohi dugu ogia bera itzuli eta gero.
Bertan dastatu genuen aurrenekoz
eta aurrenekoz
nahi dugu hala izan dadila.

**Te duermes.**
Regresas a casa.
Tu madre baña a tu hermana tierna.
Su risa infantil se refleja en el agua, llenándola de uvas, de pétalos nuevos.
Tu hermano se ha lastimado las rodillas
su sangre gotea en la arena.
Tú, del otro lado, te aferras a la maleza.
Un remolino se abre bajo tus pies y te llama.
Despiertas.

No tienes ya tierna hermana
ni hermano pequeño a quien las rodillas le sangran.
Tienes casi treinta años,
una hermana que es madre,
dos hermanos que ya no recuerdan la infancia.

**Loak hartu dizu.**
Etxera itzuli zara.
Ama ahizpatxoa bainatzen ari da.
Ume-barreek dirdira egiten dute uretan, mahatsez bete, lore berriez.
Zure nebak min hartu du belaunetan
odola tantaka erortzen zaio hondarrera.
Zuk, bestaldean zaudenak, sasiei gogor heltzen diezu.
Zurrunbiloa zabaltzen ari zaizu oinen azpian eta deika duzu.
Esnatu egin zara.

Ahizpa samurrik jada ez da
ez neba txikirik belaunak odoletan.
Ia hogeita hamar urte duzu,
izan ama den ahizpa,
bi neba haurtzaroa oroitzen ez dutenak.

Has visto ciudades rodeadas de muros
donde invisibles las olas anuncian la luz.
Has vuelto a soñarlo.
Deseas ser hija
sentir el calor de tu madre dormida
pasar todo el día en la casa del valle
mirando los aguacates lustrosos que cuelgan tímidamente de los árboles del jardín,
las mariposas que pierden el rumbo, igual que tú,
entre la huerta y el mundo.

Deseas ocasionar la catástrofe que te permita ser, otra vez,
la pequeña que escribe poemas.
Deseas convertirte en la loca de la familia
en la perdedora feliz y risueña
que puede sentarse a mirar el silencio
porque es incapaz de otra cosa
pero no tienes ya tierna hermana
ni hermano pequeño a quien las rodillas le sangran.

Has visto ciudades cubiertas de insomnio
donde la lluvia se estrella y sacude la tierra.
Un remolino se abre bajo tus pies y te llama.
Despiertas.

Ikusi dituzu harresiz bildutako hiriak
han, sumatzen ez diren olatuek iragartzen dute argia.
Berriro amets bera egin duzu.
Alaba izan nahi duzu
sentitu lo dagoen amaren beroa
egun osoa eman mendiarteko etxean
lorategiko zuhaitzetako aguakate mardul dilindatiei begira,
pinpilinpauxei, norakoa galtzen dutela, zure antzera,
ortutik mundurako bitartean.

Nahi duzu sorrarazi hondamena, bihurtuko zaituena, berriz ere,
poemak idazten dituen neskatoa.
Izan nahi duzu etxeko zoroa
galtzaile zoriontsu eta alaia
jar daitekeena isiltasunari begira
ez delako gauza beste ezer egiteko
baina ahizpa samurrik jada ez da
ez neba txikirik belaunak odoletan.

Ikusi dituzu hiriak loezak estalita
han, euriak zakar jo eta lurra astintzen du.
Zurrunbiloa zabaltzen ari zaizu oinen azpian eta deika duzu.
Esnatu egin zara.

**Les temo a las palabras porque no me sirven**
porque ignoro de sus intenciones lo voraz
lo prematuro.
Porque me niego a suplicarles
y soy, sin embargo, la esclava que les besa las sandalias.

Le temo a la llegada del poema
porque viene rodeado de ausencia
porque sus bordes quebradizos amenazan con desaparecer entre mis manos
porque si lo miro a la cara se deshoja.

¿Qué hiciste, madre, para llenarme de palabras?
¿Por qué ya no es posible el silencio?

Le temo al cuerpo que no entiende lo que digo.
A su lenguaje atroz le tengo miedo.
A la amenaza persistente de una muerte que no me abandona:
pájaro revoloteando alrededor de las naranjas de la carne
hermosa golondrina que endulzará su lengua con mi néctar.

**Beldur diet hitzei ez zaizkidalako aski**
ezagutzen ez dudalako dauzkaten asmoen asemina
arinkeria.
Ez diedalako erregutuko
izan arren, hala ere, sandaliak musukatzen dizkien esklaboa.

Beldur diot poemaren etorriari
iritsi ohi delako ausentziaz bilduta
bere hegi hauskorrak desagertu egin litezkeelako nire eskuetan
aurpegira begira naukanean galtzen dituelako orriak.

Zer egin zenuen, ama, ni hitzez betetzeko?
Zergatik orain ezinezkoa da isiltasuna?

Beldur diot diodana ulertzen ez duen gorputzari.
Darabilen hizkuntza ankerrari beldur diot.
Heriotzaren mehatxu setatiari ez baitit bakerik ematen:
haragiaren laranjen gainean itzulinguruka dabilen hegaztia
enara ederra mihia gozatuko duena nire nektarrez.

Mi cuerpo se parece al tuyo, madre.
Pero siempre seré hija para ti.
La hija mayor.
Primera en desgarrarte
y en dejarte
nido abandonado a medianoche
descanso en el enorme graderío que no termina
que no calla
que no escribo.

Le temo al final del poema
a la súbita desdicha en sus ojos
a los vacíos que lo perforan como balas atravesadas en un tronco a punto de caer
a las imágenes mudas que aprietan su cuello
y pululan en mi entorno que no logra desprenderse de ellas.

Le temo, madre, a tu angustia
y a las palabras que me enseñaste
porque no son las que quiero.

Nire gorputzak zurearen antza dauka, ama.
Baina beti izango naiz alaba zuretzat.
Alaba zaharrena.
Aurrena zu urratzen
eta altzotik joaten
gauerdian utzitako habi
pausaleku harmaila erraldoi mugagaitzean
isildu ezinean
nire izkriburik gabean.

Beldur diot poemaren amaierari
bere begien bat-bateko iluntzeari
erortzear den enborra balakatzean bezala zulatzen duten hutsuneei
irudi mutuei estutzen diotelako lepoa
eta ingurutik ezin uxatu nabilelako.

Beldur diot, ama, zure nahigabeari
eta irakatsi zenizkidan hitzei
ez direlako nahi ditudanak.

**Tu cuerpo**
despedazado por la multitud
entregado a los verdugos que no conocen el perdón a sí mismos
necesita que lo abraces como si fueras tu propia madre
la hija abandonada que no supo regresar del invierno
la amiga enterrada.
Sáciate con la dulzura que palparon tus labios
cuando una jovencita te sacó de su vientre
y te alimentó pausadamente entre sus brazos
mientras la luna cabeceaba detrás de la neblina
y en la distancia alguien
tal vez
encendía la radio.
Recuéstate bocarriba
-siempre fue hermoso el azul entrecortado por las copas de los árboles-
escucha esa voz que jamás te dejó de llamar
(aún en los días amortiguados por las misteriosas pastillas
que ahora curan la tristeza).
Detén la insistencia de las palabras.

Enciende tu luz.

**Zure gorputza**
triskatu du jendetzak
eskaini zaie norberari barkatzen ez dakiten borreroei
beharrean da, besarka ezazu zure ama bazina bezala
negutik itzultzen jakin ez zuen alaba deslaia
adiskide ehortzia.
Asebete zaitez zure ezpainak goxatu zituen eztiaz
neskatila zenak sabeletik atera zintuenean
eta hazi astiro bere besartean
ilargia erdi lo zela lainobeherak gordeta
eta handik urrun baten batek
auskalo
irratia pizten zuenean.
Etzan zaitez ahoz gora
-beti da ederra urdina zuhaitz adarren artetik-
Egiozu kasu ahots horri sekula ez baitio utzi zuri deitzeari
(nahiz eta egunak moteldu pastilla misteriotsuek
nahiz eta orain tristuraren sendagai diren).
Utzi ezazu hitzen tema.

Emaiozu izana zaren argiari.

# liburua

Liburuaren formatua irekita, 42x21 cm-takoa da. Plegatuta 21x21ekoa.










# nola egin

Azala eta testuak inprimatzeko begetal papera (edo antzekoa) erabiltzea gomendatzen da. Argazkien orrialdeak aldiz, gardena den material batetan (azetatoa).





**1.** Orrialde guztiak 21x21 cm-tara moztu (argazki batzuk erditik moztuta geratzen dira). Ezkerreko zatia gaztelerazko bertsioa da eta eskuinekoa euskarazkoa.

**2.** Azken orrialdearen ondoren material sendoagoko orrialde zuri bat gehitu eta kiribilekin koadernatu guztia, azala ezik, (gaztelerazkoan ezkerrean, euskarazkoan eskuinean). Azken orrialde hori bi aldetatik zulatu, alde batetik liburuaren orrialdeekin, bestetik azalarekin.

**3.** Bi azalak tolestu ('bat' eta 'bada'k markatzen duten tokitik) eta azken orrialdeekin josi, laurak batera.

**4.** Gehitu orrialde zuri solte bat (kiribilera lotu daiteke lokarri batekin), irudien artean tartekatuz, argazkien serieak bereizirik ikusteko (gardentasunik gabe).




# cómo hacer

Para imprimir la portada y los textos se recomienda utilizar papel vegetal o similar. Para las páginas de las fotografías, transparencias (acetato).








1. Cortar todas las páginas a 21x21 cm. (algunas de las fotografías quedarán cortadas). El lado izquierdo corresponde a la versión en castellano y el derecho a la de euskara.
2. Insertar una página blanca de un material más duro al final, y encuadernar con espirales, menos la portada (por la izquierda en la versión castellana, y a la derecha en la de euskara). Esta última página la troquelaremos por un lado con las páginas, y por el otro junto con la portada.
3. Doblar el lomo de las portadas (desde donde marca "bat" y "bada") y coserlas junto a la última página de las dos versiones.
4. Añadir una página blanca suelta (atarla a la espiral con un cordel), para ver las series de fotografías individualmente (sin el efecto de las transparencias) insertándola entre ellas.

# el libro

El formato del libro desplegado es de 42x21 cm. Plegado de 21x21 cm.











